# SHACKLETONEN ESPEDIZIOA: HONDAMENDIAREN KUDEAKETA



**A** itsasoratzeko aukera iritsi zenean

**B** laster izotzak goleta pitzatu eta ura sartzen hasi zen

**C** Shackletonek, orduan, Endurance goleta Armadaren zerbitzura jarri zuen

**D** udaren zain, negua bertan eman beharko zutela konturatu ziren

**E** oso arriskutsua zen orduan leku hura, eta oso arriskutsua da gaur egun ere, teknologia guztiak lagun

**F** porrotak ez du errekonozimendurik mezezi

**G** eta balea-portua uhartearen beste aldean zegoen

**H** dokumentu grafikorik garrantzitsua eskaini zion munduari

**I** lurrera iritsi baino lehen, izotzetan harrapaturik gelditu ziren

**J** biharamunean konturatu ziren almadia erraldoi baten gainean zeudela, izotz plaka batean, jitoan

**K** apustu larria zen, baina huraxe zen aukera bakarra onik ateratzeko

**L** lehen hiru saiakerek porrot egin zuten eguraldi zakarra egin zuelako

---

1913ko egun batean iragarki hau agertu zen Times egunkarian:

> *"Gizonak behar dira bidaia arriskutsua egiteko. Soldata txikia. Hotz handia. Ez da ziurtatzen bizirik itzultzea. Arrakastaren truke, ohorea eta miresmena."*

Ernest Shackleton kapitainak jarri zuen. Espedizio bat antolatu nahi zuen Antartika kontinente osoa zeharkatzeko, mutur batetik bestera. Oztopo asko eta laguntza gutxi jaso zuen, baina azkenean, 1914ko abuztuaren lehenean, *Endurance* goletak itsasoratzeko baimena jaso zuen, Ingalaterrak Alemaniari gerra deklaratu behar zionean. (1) ..............................................., baina Winston Churchill almiranteak berak joateko esan zion, erregearen oniritziaz.

Puerto de la Platan (Argentina) geldiune luzea egin behar izan zuten baimen eta hornidura gehiago lortzeko, pentsatu baino luzeagoa. Azkenean, berriro itsasoratu zirenean, eguraldia ez zen ona, oso hotza garai hartarako, eta Shackletonek martxa bizkortu zuen kontinentera azkarrago iristeko. Urtarrilaren 19an, ordea, okerrena gertatu zen: (2) ............................................... Ametsa bukatu zen. Espedizioak, hasi baino lehen ere, porrot egin zuen.

Hurrengo asteetan ontzia itsasoratzen saiatu ziren. Horretarako, ubidea egitea bururatu zitzaien, baina alferrikakoak izan ziren ahalegin guztiak. (3) ............................................. Orduan, izotzaren presioak ontzia ez zanpatzeko, palanka eginez askatzen saiatu ziren. Baina horretan ere zoritxarra izan zuten lagun: ezin izan zuten askatu, eta (4) .............................................

Endurance izotz azpitik hondoratu baino lehen, ahal izan zuten guztia atera zuten barrutik, hornidurak eta txalupa batzuk. Fran Hurley espedizioko argazkilaria, berriz, sotoko ur izoztuetan sartu zen argazki plakak berreskuratzeko. Denak ez zituen salbatu, baina bai asko. Balentria horri esker, (5) .............................................

Itsaso izoztuaren erdian zeuden, hotzetik babesteko aterperik gabe, Burberry jaka eta praka lodiak bakarrik soinean; buruan, berriz, txanoak eta bizar izoztu zuriak. Txalupekin eta dendekin kanpamentua antolatu zuten. Egoera oso larria zen, eta laster larriagoa izango zen: gau batean karranka beldurgarri batek iratzarri zituen; izotza apurtzen ari zen! (6) ............................................. Lurrera iristen ez baziren, akabo! Baina eguraldia oso txarra zen. Itxaron behar zuten, beraz. Eta halaxe deitu zioten kapamentu berriari: "Pazientzia". Gaitzerdi, irekitako pitzaduretatik itsas-zakur lotsatiak eta pinguino lotsagabeak agertu ziren: janaria eta entrenimendu pixka bat. Horrela pasatu zituzten hurrengo hilabeteak.

*Gaur Blackborowi behatzak moztu dizkiote* –idatzi zuen bere egunkarian Greenstreet izeneko marinelak–; *ezkerreko oinetako hatz guztiak moztu dizkiote, zentimetro erdiko muinoak utzita. Mutil gizajoa ezin hobeto portatu zen. Ezin izango dut inoiz ahaztu hatz moztu izoztuen zarata kontserba potean erortzean.*"

(7) ............................................., ez zuten bitan pentsatu: beste izotz-puska batekin talka egin baino lehenxeago igo ziren txalupetara. Egun batzuen ondoren, Elefante uhartera iritsi ziren. Hamasei hilabetean zapaldu zuten lehen lurra zen, itsaso erdian harkaitz soila. Han ez zegoen ezer. Etsitzen hasi baino lehen, ordea, Shackletonek bidaia ezinezkoa egitea erabaki zuen: berak eta beste lauk 800 milia egingo zuten San Pedro uharteraino, han balea-portua baitzegoen. Besteak laguntzaren zain geratuko ziren Elefante uhartean. (8) .............................................

San Pedro uharterainoko bidaia udazken australaren amaieran egin zuten, 6,7 metroko txalupa batean, Drakeren igarobidetik zehar. (9) ............................................. Haiek, ordea, edateko urik ere ez zuten, eta itsas-txakurren haragi izoztua zurrupatu behar zuten likidoa lortzeko. Egoera hartan, Shackletonek marinel bikaina zela frogatu ahal izan zuen.

Bi hilabete iraun zuen bidaiak. Txalupa urez beteta zegoenean iritsi ziren San Pedro uhartera, baina ez nahi zuten lekura: Rosa Lurmuturrean hartu zuten lurra (10) ............................................. Ia arrastaka eta indarrik gabe, 3.000 metroko mendiak eskalatu zituzten, berrogei kilometroan gelditu gabe. Hogeita hamasei ordu behar izan zituzten zibilizaziora iristeko. Baleen saihetsek eta odolak gorritutako badiara iritsi ziren azkenean. Bertan zeuden arrantzaleek mamuak ikusten ari zirela pentsatu zuten. 1916ko maiatzaren 20a zen.

Shackleton berehalaxe hasi zen Elfante uhartean utzitako 22 gizonak erreskatatzeko lanetan. (11) ............................................. Hurrengoan lortu zuen, Txileko Gobernuaren laguntzaz, arratzontzi batean. Abuztuaren 30a zen. Elefante uhartera iritsi zirenean, miraria ikusi zuten: denak bizirik zeuden, denak! Shackletonen espedizioko partaide bat ere ez zen hil!

Isilik itzuli ziren Ingalaterrara, oraindik gerra sutan zegoela, eta ia inork ez zien kasurik egin, apenas oihartzunik egunkarietan. (12) ............................................. eta gerra garaian are gutxiago. Shackletonek ez zuen inoiz itxaropena galdu, bere trebezia eta aginte onari esker espedizioko gizon guztiak salbatu ziren, gero gehienak Frantziako eta Alemaniako lubakietan hil ziren arren.

ERANTZUNAK:

1C 2I 3D 4B 5H 6J 7A 8K 9E 10G 11L 12F